




# IBILBIDEAK ALDE ZAHARREAN BARNA

**Laugarren ibilbideak** mendebaldetik ekialdera zeharkatzen du Alde Zaharra, aurreko ibilbideetan bisitatutako bi hiri-gune komunikatzen dituela; Errekoletoen plazatik abiatuko gara oraingoan, Taconeraren parean, eta San Jose plazan eta Redingo Bastioian amaituko dugu. Zeharkatuko ditugun kale eta plazak Alde Zaharreko ardatzak dira: Kale Nagusia eta San Saturnino, Udaletxe plaza eta Mercaderes eta, azkenik, Curia eta Katedrala. Mutur batean Katedrala egonik eta, bestean, antzinako San Lorentzoko atea, ibilbide hau, bihurgune handirik gabekoa, ia zuzen-zuzena, Alde Zaharra zeharkatzeko Done Jakue bideak erabili duen pasabidea izan da Erdi Arotik aurrera. Erromesen joan-etorriagatik eta bertako kale eta plazen kokagunearen garrantziagatik, erdialdeko hiru eliza aipagarrienak hiri-ardatz honi loturik gelditu ziren: San Lorentzo, Errekoletoen ondoan, San Saturnino, Kale Nagusiaren amaieran, eta Katedrala, Curia kalearen bukaeran.

**Errekoletoen plazaren** jatorria: XVII. mendearen bigarren laurdenean urbanizatu zen. Juan de Ciriza 1605 eta 1625. urteen bitartean Erregearen idazkaria izandako nafar noblearen ekimenez, 1624. urtean, Felipe IV.ak (Nafarroako Felipe VI.ak) erabaki zuen lursail handi bat ematea bertan komentua eraiki zezaten. Erregeak sinatutako agirian irakurtzen da, aipatu lurzatia *"Taconerako ate berriaren ondoan dela, San Lorentzoko arkutik atera eta eskuinaldera, antzina hiriaren harresi zahar eta lubanarroak ziren tokian"*. Agiri horretan aholkatzen da *"emandako orubearen zati bat komentuaren plaza egiteko erabil dezatela"* eta *"Plaza horretan beste inolako etxerik eraiki ez dezatela, ez orain, ez gero"*.

**Errekoletoen plaza (1),** gune zabal eta lauangeluarra, Alde Zaharrean dugun zaharrenetariko bat da, eta hobekien kontserbatu direnetariko bat, gainera. Bitxia bada ere, plazaren jabeak Errekoletoak dira oraindik. Merkatu garaian bertan jartzen ziren saltokiak alokatzeko baimena, esate baterako, hari eskatu behar zion Miserikordia etxeak. Lurreko harlauzek, adreilu zaharreko etxeek eta komentuaren fatxada monumentalak erabateko barroko itxura ematen


Errekoletoen plaza.

1. Errekoletoen plaza.
2. San Lorentzo.
3. Ezpeletaren Jauregia.
4. Musika eskola.
5. Kondestableren Jauregia.
6. San Zerningo putzua.
7. Udaletxe plaza.
8. Apezkikutzako antzinako espetxea.
9. NAPIren egoitza.
10. Izurdeen iturria.
11. Mirabeen komentua.
12. Putzuaren etxea.

diote plazari, XVII. mendeko usaina dariona, eta Alde Zaharreko iraganeko monasterio eta komentuen inguruko giroa ederki irudikatzen duena.

**Agustindar Errekoletoen komentua:** Iruñeko komentu honen diseinua egitea XVII. mendeko lehen erdialdean Austriatarren etxeko arkitektorik ezagunenetariko bat zenari agindu zitzaion, Juan Gomez de Morari, hain zuzen ere. Eraikuntza merkeagoa izan zedin, Udalak ondoan zegoen harresi mediebalaren harriak eta gaztelu zaharrekoak eman zituen. Obrak 1634. urtean amaitu ziren. Madrilgo komentuen ohiko arkitekturaren araberako eraikina altxatu zen. Eraikinaren alderdirik aipagarrienak plaza aldera ematen duen fatxada eta eliza dira, non XVIII. mendeko erretaulak nabarmentzen diren, oso dinamikoak eta dekorazio ugarikoak. Hegoaldeko gurutzaduran dagoen atetxo batek eliza eta komentuko sortzaileen hilobiak dituen kripta bat lotzen ditu. Klausurako mojen alde zabala bi solairu dituen adreiluzko klaustro baten inguruan egituratzen da. Gelarik aipagarrienak jangela, kapitulu-gela eta sakristia dira.





GARCÍA GAINZA, Mª C., eta beste batzuk. *Catálogo Monumental de Navarra, V*** Merindad de Pamplona,* Iruña, 1996.




Plazaren erdian, Subitzatik ekarritako uren hornidura sistema berria dela eta, XVIII. mendearen bukaeran Paretek diseinatu zuen beste iturri bat dugu. Horrelako beste bi bisitatu ditugu: Santa Zeziliakoa Navarrerian eta La Mariblanca izenekoa Taconeran. Diseinu dotore eta soila du. Hasiera batean Udaletxe plazan jartzekoa zen, baina, azkenean, egun ikusten dugun tokian paratu zuten.

Errekoletoen plazako azoka, toki zabala izanik eta antzinako harresietako portale baten ondoan egonik, Iruñean aire zabalean egiten ziren azoketatik jendetsuenetariko bat izan da, Udaletxe plazako azokarekin

**Perico Alejandría** (1818-1875): Carmen kaleko amaetxean jaiotako iruinxeme hau hiriko biztanle ezagunenetariko bat izan zen XIX. mendean. Adimen handikoa, umore onekoa eta "egarri" handikoa, hainbat lanbide eta ekinbide izan zituen eta, aldi berean, beste horrenbeste tirabira garai hartako udaltzainekin. 1852 eta 1855. urteen bitartean, 16 aldiz atxilotu zuten, gehienetan mozkortuta egoteagatik. Esan bezala, hainbat bizibide izan zituen, pregoilaria, gaitaria, feria-gizona, argitaldaria eta idazlea, besteak beste. *"El Ruiseñor de la Rochapea"* ezizena erabiltzen zuen eta gure hiriaren inguruko hainbat kopla eta idazlan argitaratu zituen, oso ezagunak garai hartan. Iruñeko iturriei dedikaturiko kopletan, Errekoletoen iturriaren jite zakar eta serioa ederki islatu zuen, bere modura beti ere:

*"La fuente de San Lorenzo*
*tiene en su cima un florero;*
*si en mayo no tiene flores,*
*menos las tendrá en enero.*

**San Lorentzo parrokia:** Gutxi dira Alde Zaharrean San Lorentzok adina gorabehera izan dituzten elizak. 1276. urteko gerra zibilean kaltetua izan omen zen eta XIV. mendearen lehenengo erdian berreraiki zuten, estilo gotikoan; elizaren eraikuntza eta egitura planiometrikoak San Saturninorenak bezalatsukoak omen ziren. Kale Nagusira ematen zuen eliz atari bat zeukan irekia, ate nagusia babesten zuena (San Saturninok bezala, honetan ere), eta, beste aldean, klaustroan, hilerri txiki bat. Gune horretan eraiki zen 1696 eta 1717.



urteen bitartean egungo San Ferminen kapera. Elizaren gainerako aldeak XIX. mendearen hasieran berreraiki ziren, estilo neoklasikoan. Baina ez da hori guztia. Lehenbiziko karlistadan, O'Donnell-ek zuzenduriko bonbardaketa batean Erdi Aroko dorreak kalte ugari jasan zituen eta XX. mendearen hasieran desmontatu behar izan zuten. Horrela, San Llorenteko Portaleko gotorlekuaren azken hondarra desagertu zen.



MARTINENA, J. Mª, *Las cinco parroquias del viejo Pamplona*, Temas de Cultura Popular, 318. zk., 32-28. orr.

batera, geroxeago ikusiko dugun bezala, eta hala segitzen du izaten, tarteka bada ere. Mendetan, plaza honek landare-ikatzaren azoka hartu zuen, ondoren baratxurien azoka bihurtu zena, batez ere Sanferminen inguruan. Produktu horren salmenta ikaragarri jaitsi bada ere, garai batean izan zuen garrantziagatik, jende askok "Baratxurien plaza" deitzen zion gune honi.

Plazaren hegoaldean, Kale Nagusian berean, **San Lorentzoko** elizaren **(2)** alde bateko hormatzarra dugu. Alde Zaharreko eliza honek, bere baitan San Ferminen kapera hartzen duenak, etengabeko "edertze eta zaharberritze lanak" jasan behar izan ditu, aldian aldiko gustuen aldaketak direla kausa. Egungo fatxada Florencio Ansoleagak eraiki zuen 1901. urtean, Erdi Aroko dorre erdi-eraitsia aldatu zenean. Aldaketa horren ondorioz, garai batean izan zuen portadatxo barroko ederra desagertu zen.

San Lorentzotik abiatuta, **Kale Nagusia** hartuko dugu, San Saturnino eta Udaletxerantz. Hiri eta herri gehienen kale izendegietan ohikoa denez, horrelako izenak maila berezia ematen dio kaleari, Alde Zaharreko gainerako kaleen aldean; Iruñeko Kale Nagusiak jauregi barroko batzuk kontserbatzen ditu, armarri ugari, XIX. mendeko hiriko burgesiaren erakusle diren etxebizitza batzuk eta merkataritzako eskaintza zabala; hor-

**Gainerako kale nagusiak:** Batasunaren Pribilegioak (1423) indarra hartu aurretik, hiria osatzen zuten hiri-egitura bakoitzak bere kale nagusia zuen. Burgoko egungo Kale Nagusiaz gainera, kale nagusi ziren, halaber, Mercaderes eta Curia, Navarrerian; Zapateria, San Nikolas Bizigunean; antzeko izaera zuten Judutegiko Kale Nagusia (Merced) eta Erromesen Kale Nagusia (Carmen). Burgoa biztanleen eta ekonomiaren aldetik indartsuagoa izanik, bertako Kale Nagusia hiri batuaren kale nagusi bilakatu zen, seguruenik.

taz, nagusitasun horrek, oraindik ere, indarrean segitzen du, bete-betean.

Tradizioz, Kale Nagusiak hiriak bisitariei eskaintzen zizkien hiri-zerbitzu gehienak hartu ditu bere baitan. Agirien arabera, badakigu, ia Burgoaren sorreratik bertatik, XII. mende inguruan, hainbat denda, ostatu-etxe, eliza eta abar zeudela Kale Nagusian. XVIII. mendera arte bi zati zituen, egungo Eslava kalean irekita zeuden belenek mugatuak. Eslavatik San Lorentzora Corregeriako Kale Nagusia zegoen eta, Eslavatik San Saturninora, Trukearen Kale Nagusia. Lehenbiziko izena uhalgileen lanbidearekin lotu behar da, Alde Zaharreko kale batzuetan oraindik ere irauten dutenak; bigarrena inguru horretan zeuden hainbat truke-etxerekin lotu ohi da. XVIII. mendean, kalearen bigarren tarte hori

**Zaldi Zuriaren ostatua:** ostatu hori, gaur egun Redingo Bastioiaren gainean dagoena, Goiz Erdi Aroan behinik behin, Trukearen Kale Nagusian izan zen. Hona hemen 1377. urtean bertan gertaturiko pasadizo bat, Arazurik bildua: *"Frances Cathelan Azellako urkamendian urkatu zuten, Iruñeko truke aldean zegoen Zaldi Zuriaren ostatuko bezeroei hainbat ezkutu, florin, morlan eta blanka eta zilarrezko gurutze bat lapurtzeagatik. Antza denez, Francés delakoa berregilea zen, beste erresuma batean belarriak ebaki baitzizkioten delitu berberagatik".* Erdi Aroko ostatu-etxe hartarako gelakide bikaina!



ARAZURI, J.J., *Pamplona, calles y barrios.* III. liburukia. Iruña, 1980. 23. or.

Zorrogileen auzoan sartu zen ("Bolserías"). Udaletxe plazaraino iristen zen auzo horretan, jakina, zorro eta eskularruen egileak nagusi ziren.

Kaleko 65. zenbakiaren ondoan **Ezpeletaren Jauregia (3)** aurkituko dugu, 1709 eta 1711. urte bitartean eraikia. 1918. urtean Ama Teresarren esku utzi zuten. Bertako fatxada hiriko arkitektura zibileko polit eta landuenetariko bat da. Benetan merezi du minutu batzuk ematea bertako figura alegorikoei, gerra-irudiei, maskaroiei eta blasoiei begira! Aipatzekoa da, orobat, barruko eskailera inperiala, atalondo

**Kale Nagusiko etxebizitzak:** etxeetako balkoiek eta aleroiek eta kalearen beraren luzerak itxura berezi eta erakargarria ematen diote kaleari. Harresi barruan egoteak zekarren estuasunak Alde Zaharreko orubeak behin eta berriz aprobetxatu beharra ekarri zuen eta, horrenbestez, etxebizitza gehien-gehienak zaharberritu egiten ziren aldian-aldian. Izan ere, lurzatien sailkapena eta kaleen antolamendua mantendu egin dira Erdi Arotik gaur arte. Gauzak horrela, aipatutako jauregi barroko horiek kenduta, Kale Nagusiko etxe gehienak lauzpabost solairutakoak dira eta berri samarrak. Ikusgarrienek ageriko adreiluen gainean igeltsuz hornituriko edo pintaturiko fatxadak dituzte eta alderik aldeko balkoiak. XIX. mendearen bukaerakoak edo XX. mendearen hasierakoak dira. Etxe horiek eraiki zituzten arkitektorik ezagunenak Florencio Ansoleaga, Julian Arteaga eta Angel Goikoetxea ditugu.

zabal batean dagoena. Eslava kalea gaindituta, 31. zenbakian, **Redinen Jauregia (4)** dugu, aurrekoa bezain ikusgarria ez dena. XVII. mendean eraikia, duela urte gutxi zaharberritu zuten eta "Joaquín de Maya" Udal Musika Eskola bertara eraman. Kalearen amaieran, Jarautarekin bat egiten duen tokian, **Kondestablearen jauregia** dago **(5)**, XVI. mendean eraikia eta XIX.aren amaieran zaharberritua. Eraikinaren balore arkitektonikoa baino gehiago, aipatzekoa da hiriaren bizitza sozialarekin izan duen lotura. Izan ere, XVIII. mendean Iruñeko apezpikuen etxea izan zen eta Udalaren behin-behineko egoitza, XIX. mendean Aragoiko Zentroa eta Zirkulu Karlista eta, duela urte gutxi arte, Los Amigos del Arte taldearen egoitza.

**San Zerningo putzuak (6)** eta San Saturninoko eliz atariko arkuek kalearen izenaren aldaketa iragartzen digute. Burgoaren ekialdeko mugan gaude. San Saturnino kale laburra antzinako Zorrogileen auzoaren ardatza da, mendetan Burgoko auzorik jendeztatuena. San Lorentzokoaz gainera, Erdi Aroko harresigunearen beste ate bat hemen zen, elizaren beraren dorreak lagun zituela. Portalapea izeneko ate honek dorre zilindriko bana zuen Kale Nagusiaren alde bietan eta mendetan iraun zuen, harik eta 1815. urtean eraitsi arte. Planoen arabera, Erdi Aroko hiriko harresi-guneko aterik ikusgarriena izan zen. Orube horretan eraiki ziren San Saturninotik Santo


San Saturninoko eliz ataria eta izen bereko kalea

Textua: Carlos Martínez. Diseinua: Birilo

**San Zerningo putzua:** estolderiako tapaki xume batean honela dioen gaztelaniazko idazkuna irakur daiteke: *"Tradizioaren arabera, putzu honetan dagoen urarekin San Saturninok hiri honetako lehenbiziko kristauak bataiatu zituen".* XVIII. mendearen erdialdean egin zen bistako deskribapen batek nolabaiteko izaera monumentala ematen dio putzuari; dena den, haren funtsezko osagaiak Alde Zaharreko beste putzu batzuenak bezalatsukoak izan omen ziren. Estalkia *"kare-mortairuzko bola erdi gisakoa zen, bost zutaberen gainekoa, eta haien azpian karela zegoen. Oso zaharra dirudi, nahiz eta gainean harrizko gurutze bat dagoen".* Gaur egun, erregistro-tapak ixten duen lur azpiko zilindroa baino ez da kontserbatzen.

Domingora daramaten eskailerak eta eskaileren aurreko plaza ttikia. Lehengo harresiaren harlandu batzuk eta Galea dorrearen kuboaren behealdeko erdiko puska ikusgai daude Santo Domingoko edo San Saturninoko belenan. Erabilera pribatuko belena hori eskaileren ondoan hasten da eta Jarauta kaleko etxeen ondoan amaitzen.

Urrats batzuk aurrerago, **Udaletxe plaza (7)** eta Udaletxearen fatxada barroko ikusgarria ditugu. Plaza errektangeluar eder hau Iruñeko batasunaren ondotik eraiki zen lehenbizikoa da. Esanahi sinboliko handia du, "Batasunaren Pribilegioaren" ondotik, Udaletxea eta plaza inoren lekuan eraiki baitziren, Navarreria Hiria, San Zernin Burgoa eta San

**Udaletxe plaza, gune publikoa:** Udaletxe plazaren ezaugarriren bat aipatu behar izanez gero, hiriaren bizitza publikoaren erdigune gisa duen funtsezko eginkizuna adierazi beharko genuke.
Izan ere, urte gehien iraun duen izena Frutaren plaza da, XVI. mendetik ohikoak izan diren fruta eta barazki saltokiengatik. Merkataritzako jarduera hori Aro Modernoan Udaletxearen atzeko aldean kokatzen ziren beste jarduera batzuei lotuta egon da, haragi merkatuari eta aleen biltegiari, hain zuzen. Plazan azoka publikoa egin zen 1864ra arte. Urte horretan saltokiak beste toki batera eraman zituzten eta Udaletxe plazaren izena eman zitzaion ofizialki. Ilun eta tristeagoa omen zen, benetan, plazari ehun eta berrogeita hamar urtez eman zitzaion beste erabilera bat, garrote zigorra jasaten zutenen urkalekua, hain zuzen. Exekuzioak publikoak eta iragarriak izaten ziren, eguerdi partean, eta zigortuaren gorpua urkamendian izaten zuten arratsaldeko laurak arte. Udaletxe plazan egindako azken urkamendu dokumentatuak XIX. mende erdialdekoak dira.



Nikolas Bizigunea bereizten zituen gunean, hain zuzen. Plazak Erdi Aroko hiru biziguneen hirigintza lotura gauzatu zuen eta, horrenbestez, Alde Zaharreko erdigune bilakatu zen. Plazaren zabala eta kokagune estrategikoa dela medio, hiritarrek eguneroko erabilerak ekarritako nortasuna eman zioten laster gune sinboliko horri, azoka-leku bihurtu baitzen, frutaren azoka alegia, mende luzetan ondoko merkatuaren osagarria. Horregatik, herriak Frutaren plaza esaten zion.

Udaletxe plaza atzean utzita, gure ibilbideak **Mercaderes kaletik** segitzen du. XVI. eta XVII. mendeetan "El Mentidero" izenaz ezagutzen zen toki honetan egon zen, jatorriz, Redingo gurutzea (ikus 1. ibilbidea). Harrizko arkuak dituzten soto batzuez gainera, Mercaderesen hiriko saltoki modernista ederrenetariko bat dago. Zinez merezi du antzinako "Blasco Farmazian" sartzea, gaur ehun eta opari denda bihurtua, zurezko kasetoiaz eta marketerian egindako lau margo alegorikoez gozatzeko, "Art Nouveau" estilokoak goitik behera. Saltoki eder hau Angel Goikoetxeak diseinatu zuen 1905. urtean.



Curia kalea eta, atzean, Katedrala.

**Curia kalea,** goian Katedrala erakusten duelarik, hiriaren gune ikusgarri eta ederrenetariko bat da. Gainera, kaleko aldapa gogorrak hirian lehenbizi urbanizatu zen eremura garamatza, hiriaren historia osoko erreferente sakratu nagusira, hain juxtu. Curia kalea erromatarren "Decumanus Maximus" izan zen. Haren azpian hainbat aztarna arkeologiko aurkitu dira, erromatarren garaikoak eta Erdi Arokoak. Gaur

**Sotoak eta indusketak:** Alde Zaharreko kaleetan hainbat soto kontserbatzen dira oraindik. XIX. mendean erromatarren garaiko eta Erdi Aroko aztarna arkeologiko ugari aurkitu ziren Curia eta Navarreria kaleetako sotoetan. Curia kaleko 18. zenbakikoan, esate baterako, erromatarren bi mosaiko eder aurkitu ziren 1856. urtean, harresi dorredun batzuk eta itsasoko zaldi bat irudikatzen zituztenak. 1880. urtean, beste mosaiko batzuk aurkitu ziren 15. zenbakian, agian aurrekoekin loturik daudenak. Guztiak Nafarroako Museoan daude ikusgai.





egun bisitatu daitezkeen Erdi Aroko soto eta etxabeetatik 29. zenbakiko sotoa nabarmentzen da, **apezpiku-etxearen antzinako dorre eta espetxekoa (8),** garai batean Katedraleko kuriaren egoitza ere izan zena, seguruenik. XX. mendean banana-biltegi bat izan zen bertan eta berriki taberna bat ireki dute.

Mercaderesetik bertatik, Katedralaren fatxada neoklasikoak Curia kalearen bukaeran dagoen plazaren hiri-eremu osoa monopolizatzen du, hain da ikusgarria! Katedralaren ezkerretara, lehengo **Merkataritza eta Irakasle Eskola (9)** dugu, XIX. mendearen erdialdean eraikia, Bigarren Hezkuntzako Institutu Probintziala hartzeko. Eraikinaren barrualdea berriki zaharberritu eta itxuraberritu dute, burdinazko arkuek eta zutabeek mugatutako bi pisuko patio artikulatuaren balio arkitektonikoa nabarmenduz. Gaur egun, Nafarroako Gobernuko Hizkuntza Politikarako Zuzendaritza Nagusiko eta Nafarroako Administrazio Publikoaren Institutuko bulegoak daude bertan.



NAPIren egoitza San Jose plazan.

**San Jose plaza** eder eta lasaia honako etxe hauek mugatzen dute: Merkataritza Eskolak, Katedralak eskuin aldean, Santa Gemako artxidiakonoaren etxeak barrualdean, eta Andre Mariaren Mirabeen komentuak eta hainbat etxek ezkerraldean. Plazaren erdian **Izurdeen iturria (10)** dugu, hirian kontserbatu den XIX. mendeko hiri-altzari bakanetariko bat. Ezkerrean Salsipuedes kalexka dago, **Andre Mariaren Mirabeen komentuan (11)** amaiera duena. Eraikin hori ere Florencio Ansoleagak egina da.

Katedraleko gurutzadurako atearen parean, **Redin kalea** abiatzen da. Eskuineko harrizko etxe txikiek eta hormazko gaineko pasabideak,

**Izurdien iturria:** burdina moldeatuan egindako iturri-kaleargi original hau 1877. urtean egin zen. Hasiera batean Done Jakue plazaren erdian kokatu zuten, Merkatuaren atearen parean, eta hantxe izan zen 1952. urtean, Udaletxearen zaharberritze-lanak zirela eta, oraingo tokira ekarri zuten arte; San Jose plaza Alde Zaharreko txokorik lasai eta ederrenetarikoa izaki, iturriaren diseinu klasiko eta dotorea ongi baino hobeki datorkio inguruneari.



zurezko armazoi eta guzti, hiri-multzo ikusgarria osatzen dute, antzinako garai bat gogora ekartzen duena. **2. zenbakiko etxearen (12)** patioan putzu zahar batek irauten du, XX. mendearen lehenbiziko urteak arte hirian ohikoak izan omen zirenen gisakoa (ikus 5. ibilbidea). Pasabidea mende honetako bigarren hamarkadan eraiki zen, Andre Mariaren Mirabeen komentuaren handitzelanen ondorioz. Kalexkaren behin betiko egitura Redingo Bastioiaren urbanizazio orokorraren obrekin batean finkatu zen 1960. urtearen inguruan (ikus 1. ibilbidea). Bastioiaren miratokitik dagoen Iruñerriko ikuspegi zabalaz gozatuz bukatuko dugu laugarren ibilbide hau, harresietako malkarren ondo-ondoan.



Izurdien iturria



Redin kalea; beheran Katedralea